

# Sanskrito

**Sanskritoa**[1] (sanskritoz: संस्कृता वाक्, *saṃskṛtā vāk*, edo laburtuta संस्कृतम्, *saṃskṛtam*), hizkuntza indoariar historiko bat da, hinduismoaren eta budismoaren hizkuntza liturgikoetako bat eta Indiako 22 hizkuntza ofizialetako bat.[2]

Sanskritoaren aurreneko forma vedikoa da, K.a. 1500 inguruan jadanik *Rig-veda* testuan erabilia, gaur egungo Indiako eta Pakistango iparraldean mintzo zen hizkuntzan oinarritua. K.a. V. mende inguruan Paninik eta beste gramatikari batzuek arautu eta finkatu zuten hizkuntza.[3]

Geroztik, sanskrito klasikoa, Paniniren eredutik zerbait aldendua, k.a. V. mendetik k.o. X.era loratu zen, eta goi klaseen artean ohiko kultura hizkuntza izan zen. Hartatik eratorri zen prakrito edo hizkuntza arrunta. Egun, sanskritoa, gutxi bada ere, *devanagari* idazkeran erabiltzen da, jakintza gizonen arteko komunikabide gisa, eta baita zenbait literatur testutan ere. Sanskrito klasikoaz idatzitako testu anitz gorde direnez, antzinako hizkuntzen arteko ezagunenetakoa da.[4]

| Sanskrito | |
|---|---|
| संस्कृतम् — 𑀲𑀁𑀲𑁆𑀓𑀾𑀢𑀫𑁆 | |
| **Datu orokorrak** | |
| **Hiztunak** | 2.212 (1971)<br>6.106 (1981)<br>49.736 (1991)<br>14.135 (2001)<br>lehen hizkuntza: 26.490 (2011) |
| **Hizkuntza familia** | |
| hizkuntza nostratikoak<br>Hizkuntza euroasiarrak<br>Indoeuropar hizkuntzak<br>Indo-irandar hizkuntzak<br>Indoariar hizkuntzak<br>Prakrito | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza-tipologia** | SOV hizkuntza eta hizkuntza fusionatzailea |
| **Modu gramatikalak** | desiderative (en) eta injunctive (en) |
| **Alfabetoa** | Devanagaria, Kannada alphabet (en), Vatteluttu alphabet (en), Śāradā script (en), Siddhaṃ alphabet (en), Nandinagari (en) eta Nāgarī script (en) |
| **Aurrekaria** | Vediko |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-1** | sa |
| **ISO 639-2** | san |
| **ISO 639-3** | san |
| **Ethnologue** | san (http://www.ethnologue.com/language/san) |
| **Glottolog** | sans1269 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/sans1269) |
| **Wikipedia** | sa (https://sa.wikipedia.org) |

## Eduki-taula


- **Ezaugarri historiko, sozial eta kulturalak**
  - Historia eta garapena
  - Arkaismoak
- **Sailkapena**
- **Linguistika**
  - Fonologia
  - Bokalak
  - Kontsonanteak
  - Gramatika
- **Maileguak**
- **Erreferentziak**
- **Kanpo estekak**


## Ezaugarri historiko, sozial eta kulturalak

### Historia eta garapena

Ez dugu ondo ezagutzen Indiako iparraldean noiz hasi ziren hizkuntza indoeuroparrak hitz egiten . Normalean, Harappa kultura bezalako lehen erresumak indoeuroparrak ez ziren herriek osatu zituztela suposatzen dute. *Rig-veda* izeneko bere ereserki sakratuen liburuan, ariarrek utzi zuten aberria deskribatu zuten. K.a. II. milurtekoaren uneren batean, indoeuropar herriak India iparraldean sartu ziren. Hizkuntza indoeuroparretan idatzitako lehen testigantzetako bat, Vedak izeneko testuak, sanskrito vedikoan dago. Testu hauek, gutxienez, k.a. I. milurtekoan Indiako iparraldeko herenean hedatu ziren, brahmi izeneko idazkera batean.



Sanskritoz idatzitako taulatxoak: *Devi-majatmia* edo "Devi' jainkosaren loriak", antzinako idazkera bhujimolean ahur orriaren gainean idatzia (Bihar edo Nepalen, XI. mendea).

Sanskritoa ez da, zehazki, hizkuntza hila, testuinguru jakin batzuetan Indiako hamarnaka mila lagunen ohiko komunikazio-hizkuntza baita. Izan ere, gaur egun India osoko eskola eta etxeetan irakasten, irakurtzen eta idazten dute, baina bigarren hizkuntza gisa. Gainera, brahman batzuek "ama hizkuntzatzat" hartzen dute. Eguneratutako txostenen arabera, tokiko hizkuntza gisa berbizitzen ari dira Shimoga hiritik gertu dagoen Mattur herrian (Karnatakan).[5] Hala ere, sanskritoz solturaz egiten duten pertsona gehienek bigarren hizkuntzatzat dute, eta ez lehen hizkuntza gisa.

### Arkaismoak

Sanskritoan arkaismoak, bereziki sistema kontsonantikoan, antzinako beste hizkuntza batzuekin alderatzen denean antzematen dira, latina, greziera edo baita arkaismo ugari gordetzen dituzten hizkuntza modernoak ere, lituaniera kasu. Hizkuntza horiek guztiek aldaketa fonetiko eta gramatikal nabarmenak izan badituzte ere, egitura aitzinindoeuropar klasikotik aldendu dutenak, antzekotasun nabarmenak dituzte. J. P. Malloryk lituaniar esaera zahar bat erabiltzen du (sanskritoz, lituanieraz eta latinez idatzia) dituzten antz handia erakusteko:[6]

> Sanskritoz: *«Devas adadāt datás, Devas dat dhānās»*.
> Lituanieraz: *«Dievas davė dantis, Dievas duos duonos»*.
> Latinez: *«Deus dedit dentes, Deus dabit panem»*.
> Euskaraz: «Jainkoak hortzak eman zizkigun, Jainkoak ogia emango digu».

## Sailkapena

Sanskritoa, beste indo-ariar hizkuntzak bezala, irandar hizkuntzekin hertsiki lotuta dago, honela, indo-irandar edo indo-ariar hizkuntzen adarraz hitz egiten delarik.

Sanskritoa, zenbait alderditan, hizkuntza kontserbatzailetzat hartzen da, aitzinindoeuropera berrienaren zenbait ezaugarri bereziki ongi islatzen dituena. Sanskritoa Indiako indo-ariar hizkuntza modernoen aurrekotik hurbil dagoen hizkuntzatzat har dezakegu. Kronologikoki, hona hemen sanskritoaren ondorengo beste hizkuntza indo-ariar batzuk: antzinako Indiako prakritoa[7]-Pāli kanonaren hizkuntza- hindi-urdua, bengalera, nepalera eta Indiako beste eskualde hizkuntza batzuk (horien artean kaxmirera, marathera, gujaratera, assamera edo punjabera, besteak beste). Jatorrian Europa eta Ipar Afrikako ijitoek hitz egiten zuten erromaniera ere oso lotuta zegoen aurreko hizkuntzekin.

| | |
|---|---|
| Transcription | śivō rakṣatu gīrvāṇabhāṣārasāsvādatatparān |
| Bengālī | শিবো রক্ষতু গীর্বাণভাষারসাস্বাদতৎপরান্ |
| Devanāgarī | शिवो रक्षतु गीर्वाणभाषारसास्वादतत्परान् |
| Gujarātī | શિવો રક્ષતુ ગીર્વાણભાષારસાસ્વાદતત્પરાન્ |
| Gurmukhī | ਸ਼ਿਵੋ ਰਕ੍ਸ਼ਤੁ ਗੀਰ੍ਵਾਣਭਾਸ਼ਾਰਸਾਸ੍ਵਾਦਤਤ੍ਪਰਾਨ੍ |
| Oṛiyā | ଶିବୋ ରକ୍ଷତୁ ଗୀର୍ବାଣଭାଷାରସାସ୍ବାଦତତ୍ପରାନ୍ |
| Tamiḻ | ஷிவோ ரக்ஷது கீர்வாணபாஷாரஸாஸ்வாததத்பராந் |
| Tĕlugu | శివో రక్షతు గీర్వాణభాషారసాస్వాదతత్పరాన్ |
| Kannaḍa | ಶಿವೋ ರಕ್ಷತು ಗೀರ್ವಾಣಭಾಷಾರಸಾಸ್ವಾದತತ್ಪರಾನ್ |
| Malayāḷam | ശിവോ രക്ഷതു ഗീര്‍വാണഭാഷാരസാസ്വാദതത്പരാന്‍ |

Hainbat alfabetotan idatzitako sanskritozko testua: «Shivak jainkoen hizkuntzaz atsegin hartzen dutenak bedeinka ditzala»(Kālidāsa)

Denbora luzez sanskritoa zela hizkuntza horien jatorria pentsatu zuten. Baina gaur egungo ebidentziek sanskritoa ez dela hizkuntza indo-ariar modernoen aurrekari zuzena edo "ama hizkuntza", baizik eta adar paralelo batena iradokitzen dute (nolabait esateko hizkuntza modernoenen "ama-izeba" moduko bat da). Hizkuntza moderno gehienak tokiko prakritoaren ondorio lirateke.

## Linguistika

### Fonologia

Sanskritoak 36 fonema inguru bereizten ditu. Hala ere, badaude alofonia batzuk, eta, beraz, devanagari alfabetoak 48 soinu ezberdin bereizten ditu (ez denak oposizio fonologikoan, noski). Hona hemen ordena alfabetiko tradizionala: bokalak, diptongoak, anusvāra eta visarga, oklusiboak (a espartzua) eta sudurrezkoak (azken bi talde hauetan aho-traktuaren atzealdetik aurrealderantz hasita) dira, eta azkenik likidoak eta frikatiboak. IAST sisteman (Transliterazio Sanskritozko Nazioarteko Alfabetoa) idazkeran transkribaturiko soinuak honakoak dira:

a ā i ī u ū ṛ ṝ ḷ ḹ ; e ai o au
ṃ ḥ
k kh g gh ṅ; c ch j jh ñ; ṭ ṭh ḍ ḍh ṇ; t th d dh n; p ph b bh m
y r l v; ś ṣ s h

Beste ordena alfabetiko tradizional ere badago, Pāṇini gramatikariaren *Shiva-sutra* izenekoa.

## Bokalak

Hona hemen devanagarizko bokal-inbentarioa: lehenengo zutabean letra espezifikoak, hitzaren hasieran erabiltzeko; bigarrenean, प् (/p/) kontsonantearen marka diakritikoa; hirugarrenean, NAF alfabetoaren araberako ahoskera; eta laugarrenean, IAST sistemara egindako transliterazioa:

| Letra | प् | NAF | IAST |
|---|---|---|---|
| अ | प | /ɐ/ o /ə/ | a |
| आ | पा | /äː/ | ā |
| इ | पि | /i/ | i |
| ई | पी | /iː/ | ī |
| उ | पु | /u/ | u |
| ऊ | पू | /uː/ | ū |
| ऋ | पृ | /ɽ̩/ | ṛ |
| ॠ | पॄ | /ɽ̩ː/ | ṝ |
| ऌ | पॢ | /l̩/ | ḷ |
| ॡ | पॣ | /l̩ː/ | ḹ |
| ए | पे | /eː/ | e |
| ऐ | पै | /(aːɪ)/ | ai |
| ओ | पो | /oː/ | o |
| औ | पौ | /(aːʊ)/ | au |

## Kontsonanteak

Hona hemen sanskritoaren inbentario kontsonantikoa, devanagarizko alfabetoan irudikatua, bere transkripzio konbentzionalean IAST (Transliterazio Sanskritozko Nazioarteko Alfabetoa), NAFko baliokidearekin batera, Stiehlek emana:

| | | Ezpainkaria<br>ओष्ठ्य<br>oṣṭhya | | Horzkaria<br>दन्त्य<br>dantya | | Erretroflexua<br>मूर्धन्य<br>mūrdhanya | | Sabaikaria<br>तालव्य<br>tālavya | | Belarra<br>कण्ठ्य<br>kaṇṭhya | | Glotala |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Herskaria<br>स्पर्श<br>sparśa | Hasperengabea<br>अल्पप्राण<br>alpaprāṇa | p प [p] | b ब [b] | t त [t̪] | d द [d̪] | ṭ ट [ʈ] | ḍ ड [ɖ] | c च [tɕ] | j ज [dʑ] | k क [k] | g ग [g] | |
| | Hasperenduna<br>महाप्राण<br>mahāprāṇa | ph फ [pʰ] | bh भ [bʱ] | th थ [t̪ʰ] | dh ध [d̪ʱ] | ṭh ठ [ʈʰ] | ḍh ढ [ɖʱ] | ch छ [tɕʰ] | jh झ [dʑʱ] | kh ख [kʰ] | gh घ [gʱ] | |
| Sudurkaria<br>अनुनासिक<br>anunāsika | | m म [m] | | n न [n̪] | | ṇ ण [ɳ] | | (ñ ञ [ɲ]) | | ṅ ङ [ŋ] | | |
| Erdibokala<br>अन्तस्थ<br>antastha | | v व [v] | | | | | | y य [j] | | | | |
| Urkaria<br>द्रव<br>drava | | | | l ल [l̪] | | r र [ɽ] | | | | | | |
| Frikaria<br>ऊष्मन्<br>ūṣman | | | | s स [s̪] | | ṣ ष [ʂ] | | ś श [ɕ] | | ḥ ः [x] | | h ह [ɦ] |

## Gramatika

Sanskritoa, k.a. I. milurtekoko beste indoeuropar hizkuntza batzuk bezala, hizkuntza malgukari eta sintetikoa da, SOV eta preposizioaren oinarrizko ordena duena (nahiz eta postposizio gutxi batzuk egon).

Izenek eta adjektiboek zortzi kasu morfologiko (nominatiboa, bokatiboa, akusatiboa, genitiboa, datiboa, ablatiboa, lokatiboa eta instrumentala), hiru zenbaki (singularra, duala eta plurala) eta hiru genero (maskulinoa, femeninoa eta neutroa) bereiz ditzakete. Aditzak antzinako grezieraren ia kategoria flexibo berberak ditu.

# Maileguak

Indiako elementu erlijioso eta kulturalekin lotutako euskaraz erabiltzen dugun hitz askok antzinako sanskritoko izenak dituzte: asana (yogaren posizioa), avatar (*ava-tara*, 'jaisten duena'), ayurveda (medikuntza), bodhisattva, brahman (apaiza), Buda, txakra (energia-gune), guru (maisu), svastika (*su astika*, igarpen onekoa), karma, mandala, mantra eta abar.

# Erreferentziak


1. ↑ *47. araua - Hizkuntza hilak eta klasikoak.* (https://www.euskaltzaindia.eus/dok/arauak/Araua_0047.pdf) Euskaltzaindia . Noiz kontsultatua: 2010-12-23.
2. ↑ *Lur* entziklopedietatik hartua.
3. ↑ *Lur* entziklopedietatik hartua.
4. ↑ *Lur* entziklopedietatik hartua.
5. ↑ TimesOfIndia.IndiaTimes.com (http://timesofindia.indiatimes.com/articleshow/msid-1199965,curpg-1.cms) **(Ingelesez)**
6. ↑ Mallory, J. P.. (1992). «In Search of the Indo-Europeans / Language, Archaeology and Myth» *Praehistorische Zeitschrift* (Walter de Gruyter GmbH) **67** (1) doi:10.1515/pz-1992-0118 (https://dx.doi.org/10.1515%2Fpz-1992-0118) ISSN 1613-0804 (http://worldcat.org/issn/1613-0804).
7. ↑ Woolner, Alfred C.. (1986). *Introduction to Prakrit.* (https://books.google.com/books?id=IwE16UFBfdEC) Motilal Banarsidass, 6 or. ISBN 978-81-208-0189-9.


# Kanpo estekak

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q11059 · Multimedia: Sanskrit (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Sanskrit)<br>**Identifikadoreak** · GND: 4051642-8 (https://d-nb.info/gnd/4051642-8) · LCCN: sh85117331 (https://id.loc.gov/authorities/sh85117331) · NDL: 00560852 (https://id.ndl.go.jp/auth/ndlna/00560852) · AAT: 300389206 (https://www.getty.edu/vow/AATFullDisplay?find=&logic=AND&note=&subjectid=300389206) ·<br>**Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/Sanskrit-language) |

